## Sarrerea eta otoitza

*Garizumako oneraspen ederra dogu KURUZBIDEA. Bere azken uneetan jarraitu gura deutsogu Jesusi. Jarraipen horretan, bihotza zabaldu daigun batez ere, Jainkoak bizitza barriztuaren grazia emon deigun*.

## OTOITZA

Jainko Aita/Ama: Gogora dakarguz zure Seme maitearen berbok: «*Ene Aita, edari samin hau derrigorrez edan behar badot, egin bedi zure nahia*». Eta garrasika zuzentzen gaiatzuz: non zengozan zu zure Seme maitea, jasanezineko ibilbidean, heriotzara abiatu zan unean?
Non zagoz zu, mundu honetako indar zuzengabeen azpian hainbat eta hainbat zure seme-alaba, jasanezineko ibilbidean, heriotzara abiatzen diran unean?
Zergaitik zagoz isilik? Zergaitik zagoz hain urrun, zure Seme maiteaz eta zure seme-alabokaz ahazturik?

...

Ala geure berbeak estaltzen dau zurea, eta geure txarkeriek eta zuzengabekeriak estaltzen dabez zure berbea eta zure zuzentasuna?
...



de guztiak. Eta autortzen doguz eta aintzat hartzen gure muga, erratu eta pekatu guztiak. Eta parkatzen doguz guri eginak. Sinisten dogulako emoten deutsogu azken berbea Jainkoari, berea dauanari.

**Gure Aita...**

JESUS, MUNDUKO ARGIA.
JESUS, ZINEZKO EGIA.
JESUS, BETIKO BIZIA.




## HAMABOSKARREN EGOTALDIA
«Jesus biztu egiten da»

* Gurtzen zaitugu, Kristo,
eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako

**Mt 28, 16-20**

[16] Hamaika ikasleak Galileara joan ziran, Jesusek esan-
dako mendira. [17] Ikusi ebenean, gurtu egin eben; ba-
tzuk, ordea, zalantzan egozan. [18] Jesusek, hurreraturik,
honela egin eutsen berba: «Ahalmen osoa emon deust
Jainkoak zeru-lurretan. [19] Zoaze, ba, eta egin herri
guztiak nire ikasle, Aitaren eta Semearen eta Espiritu
Santuaren izenean bateatuz [20] eta nik agindu deutsue-
dan guztia beteten irakatsiz. Eta ni zeuekaz izango no-
zue egunero munduaren azkenera arte».

****

Ba dago itxaropenik. Heriotzea ez da azkena, betetasunerako atea zabaltzea baino. Eta eskerrak! Zer litzateke, bestela, jaio-barritan galtzen diranez; edo, goseak jota, pare bat urte betetera heldu ez diranez; edo era askotako zuzengabekeria jasan dabenez..., gure ustez zentzun bako heriotzea eroan dabenez?

Sinisten dogu: Bizitzearen sortzaile dan Jainkoak bizitza bat bera ere ez dauala galduko, bete barik lagako, osotasunan sartu barik baztertuko. Sinisten dogu!

Eta sinisten dogulako egiten dogu bizitzearen alde. Eta aztertzen ditugu bizitzearen aurkako gure jarrera eta jokabi-



Emoiguzu zure Seme maiteari jarraitzea, eta zure berbea harexengan entzuteko grazia. Gure bizikerea haren eskeintzan eta zuzentasunean berbideratzeko grazia.

Zuri zintzotasunez erantzun-gurea, geure senide azpiratu eta aurrean erabiliengan gauzatzeko grazia.

Geure jasapen bihurtu daigula hareena, zuk zeure Seme maitearena eta zure seme-alaba guztiona zeure jasapen egiten dozun lez.

Egin gaizuz errukitsuak eta maitasunean ausartak.

**ZURE AURPEGI-BILA GABILTZA GU, JAUNA,
ZU ZAITUGU ARGI ETA SALBAMEN,
ZU, JAUNA, BIZIAREN BABES.**




## LEHENENGO EGOTALDIA

«Jesus heriotzara epaitua»

* Gurtzen zaitugu, Kristo,
eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako

**Mt 26, 3-5.14-16**

3 Orduan, abadeburu eta herriko zaharrak Kaifas
izeneko abade nagusiaren jauregian batu ziran, 4 eta
Jesus maltzurkeriaz atxilotzea eta hiltea erabaki eben.
5 Baina hau inoen: «Ez gero jaiegunean, herrian iskan-
bilarik gerta ez dadin».
14 Orduan, Hamabietako batek, Judas Iskariote dei-
tuak, abadeburuengana joan 15 eta esan eutsen: «Zen-
bat agintzen deustazue Jesus zuen eskuetara emotea-
gaitik?»
Zilarrezko hogeita hamar txanpon agindu eutsoen.
16 Ordutik, Jesus hareen eskuetara emoteko egokiera
bila hasi zan Judas.

****

Zertan dihardue Agintariek? Zertan dihardue "zentzundunek"? Ze kalte egin deutse Jesusek? Ze enbarazu egiten deutse? Edo... ze Jainko iragarten dabe eta gurtzen dabela dinoe?

Lagunminak ere jausi daitekez *itsukeria* horretan?

Jesusek ez dau esku batez intzentsua lurrintzen eta beste eskuaz apala eta txikia menperatzen, bere morroi bihurtzen, edo gaisoen gaisoan Jainkoaren zigorra nabarmentzen.



**Mt 28, 1-6**

28,1 Zapatua igaro eta asteko lehenengo eguna argitze-
an, Magdalako Maria eta beste Maria hilobia ikustera
joan ziran. 2 Bat-batean, lurrikara gogorra gertatu zan:
Jaunaren aingerua jaitsi zan zerutik eta, hurreraturik,
harria biratu eban eta gainean jesarri. 3 Tximistea
emoten eban eta haren jantzia edurra baizen zuria
zan. 4 Ha ikustean, bildurrez dardar eta hilda lez geldi-
tu ziran zaintzaileak. 5 Baina aingeruak emakumeei
berba egin eutsen, esanez: «Zuek ez bildurtu. Badakit
Jesus kurutzean josiaren bila zabizena. 6 Ez dago he-
men, biztu egin da-ta, esan eban lez. Erdu eta ikusi
jarria egon zaneko tokia.

****

Arin esaten dogu: *hil ondoren, bardin deuskula gure gorpuaz zer egiten daben*. Egia esanda, gorpuak ere begiramena merezi dau. Hil ondoren ere bagara zeozer; ez da dana galdu. Hauxe adierazten dogu gorpuari emoten deutsogun *gurtzaz*.

Gaisoak edo ezinduak zaintzen diharduenen haragian sartu nahi izango neuke: zelan lotzen jaken zainduari; harenganako zelango maitasunera heltzen diran; hareekazko zelango loturea josten daben...

Ondo bizi dan gizartea bilatzen dogu... dirutzaz, teknikaz, morroiak gehituz, besteak menpean jarriz, besteak baino handiagoak, bizkorragoak edo gehiago izanik... Ete da hori bidea?

Erakutsi eban Jesusek besterik bere bizitzan zehar: zerbitzuak alkartzen gaitula eta alkar maitasunera eroaten. Eta hauxe adierazten dabe hilobira doazen emakumeek.

**Gure Aita...**

—Badozuez zeuen guardak. Zoaze, eta zaindu dakizuen modura.

[66] Joan ziran, bada, eta hilobia segurtatu eben, harria zigilatuz eta guarda ipiniz.

****

Kurutzetik eratsita Mariak bere altzoan hartzen dau Jesusen gorpua. Hilda bada ere, laztandu daike Semearen gorpua; malko eta antsi artean, baina laztandu daike Semearen gorpua.

Eta, zenbat ama dagoz seme-alabengandik urrunduta, erbesteratuta, kartzelaratuta, galduta...? Bat egiten dogu Mariaren atsekabeagaz. Ezin ete geike bat egin beste ama honeen atsekabeaz?

Jesusen kurutzeak agerian jarten dau haren bizikerea: Jainkoa ahulen ondoan dago, hareen zaindari da, babesle. Horixe gauzatu eban Jesusek bere bizitzan zehar: gaisoen eta pekatarien eta baztertuen artean egonez eta harei salbazino itxaropena biztuz.

Zelan hartu geike besoetan hondatuen gorpua?

**Gure Aita...**




## HAMALAUGARREN EGOTALDIA
«Jesus hilobian jarria»

* Gurtzen zaitugu, Kristo,
eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.



Jesusek Aita deritzon Jainkoa aurkitzen dau zorigaitzean eta han jausten direnei eskua luzatzen deutse eta Aitaren aurpegia ikusiazoten, haren errukia dastatzera emonez.

Hala dirudi, baina ez: Jainkoa ez dago zoritxarretik urrun. Han dogoanekaz bat eginda dago, maite dauazalako...

**Gure Aita**




## BIGARREN EGOTALDIA
«Jesus kurutzeak zamatua»

* Gurtzen zaitugu, Kristo,
eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.

**Mt 26, 26-29**

[26] Afaltzen egozala, ogia hartu eban Jesusek eta, bedeinkapena esan ondoren, zatitu eta ikasleei emon eutsen, esanez: «Hartu eizue eta jan, hau nire gorputza da».

[27] Gero, kopa hartu eta, esker onezko otoitza egin ondoren, emon egin eutsen, esanez: «Edan guztiok honetatik, [28] hau nire odola da-ta, Jainkoarekiko ituna barrituko dauana, pekatuak parkatzeko guztien alde isuria. [29] Egia esan, hemendik aurrera ez dot gehiago ardaorik edango, neure Aitaren erreinuan zuekin ardao barria edan arte».

****

Ogia hartu eta..., ardaua hartu eta..., Kurutzea hartu eta... banandu, jaten-edaten emon, pisu astuna gainetik kendu eta

berak eroan, edo eroaten lagundu... Oinazetan dagoanaren ondoan egoten jakin dau Jesusek, hari indar emoten, hari itxaropena, argitasuna, bizia emoten.

Zenbat ikusten doguzan bizi dogun egoera honetan inoren kurutzea norberetzen, eroaten laguntzen, edo, zuzenean, haren sorbaldatik eratsi eta norberean kargatzen. Baina eureneratzen gaitue beste guztiok? Ala, bakotxa bere gauzetan, halangoak aurkitu nahi ditu, baina ez euretariko bat izan?

Jesusek *euretariko bat* egin gura gaitu: besteentzat jana eta edaria. Horixe iragarten dogu eta ospatzen Eukaristian.

**Gure Aita...**




## HIRUGARREN EGOTALDIA
«Jesus lehen aldiz jausten da»

* Gurtzen zaitugu, Kristo,
eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.

**Mt 26, 31-35**
[31] Jesusek esan eutsen: «Zuek guztiok niregan dozuen sinesmenak huts egingo dau gaur gauean, honela dago-ta idatzia Liburu Santuetan: Joko dot artzaina eta ardiak sakabanatu egingo dira. [32] Baina biztu ondoren, aurretik joango naiatzue Galileara».
[33] Pedrok esan eutson:
—Zureganako beste guztien sinesmenak huts egiten badau ere, nireak ezelan ere ez.
[34] Jesusek erantzun:



Jainkoa (Aita)? Benetan itzi dau bertan-beherak Aitak bere Seme maitea? Holan bada, alperrekoa da gure bizitza; ez dau merezi horrela hiltekotan.

Orduan? Zein da itxaron geiken salbazinoa? Bizitzearen ze amaiera, edo betetasun itxaron geike? Egin ete geike bat Jesusen garrasiaz, geure bizitzearen hondora sartzeko, eta han, Jainkoa geugaz sufritzen eta hilten dagoala somatzeko, eta horrela bere bizitza betean hartzen gaitula autortzeko?

**Gure Aita...**




## HAMAHIRUGARREN EGOTALDIA
«Jesus kurutzetik eratsia»

* Gurtzen zaitugu, Kristo,
eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.

**Mt 27, 62-66**
[62] Bijamona larunbata zan. Abadeburuak eta fariseuak Pilatogana batu ziran alkarregaz, [63] eta esan eutsoen:
—Jauna, gogoratu dogu engainatzaile horrek, artean bizi zala, esan ebala: «Hiru egunen buruan biztu egingo naz». [64] Agindu eizu, bada, hirugarren egunera arte hilobia zaintzeko; ez dadila gerta, haren ikasleak gorpua eroan eta gero «Hilen artetik biztu egin da» herriari esanez etortea. Azken engainu hau lehenengoa baino txarragoa izango litzateke.
[65] Pilatok erantzun eutsen:




## HAMABIGARREN EGOTALDIA
«Jesus kurutzean hila»

* Gurtzen zaitugu, Kristo,
eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.

**Mt 27, 45-46.50-52.54**
[45] Eguerditik hirurak arte ilundu egin eban lurbira
osoan. [46] Hirurak inguruan, Jesusek oihu handiz esan
eban: «Eli, Eli, lema sabaktani?» (Hau da: «Ene Jain-
ko, ene Jainko, zergatik itzi nozu?»).
[50] Baina Jesusek, barriro deadar handia eginez, az-
ken arnasea emon eban. [51] Eta horra, santutegiko oiha-
la erditik urratu zan, goitik beheraino; lurrikarea izan
zan eta harkaitzak zartatu egin ziran; [52] hilobiak zabal-
du eta hilik egozan santu asko biztu egin ziran. [54] Lu-
rrikara eta gertakari guztiok ikustean, erromatar ehun-
tariak eta haregaz Jesus zaintzen egozan besteek, bil-
durrak jota, esan eben: «Benetan, Jainkoaren Semea
zan hau!»

****

Heriotzeak bildur emoten deusku. Ez dogu autortzen, baina heriotzearen bildur gara; batez ere heriotza hori sufrimendu artean bada. Eta lagunen bat hilten jakunean, sufritu egiten dogu. Heriotzearen gainetik jarri gura izango geuke. Baina ezin dogu. Atsekabean sartzen gaitu; garrasi egiteraino. Eta zein latz egiten jakun erantzunik ez jasotea.

Harritzekoa! Ez zan, ba, Jesusen bizitzea Jainkoaren (Aitaren) nahia egitea izan? Non dago orain, behar dauanean,



—Benetan dinotsut: Gaur gauean, oilarrak jo baino lehen, hiru aldiz ukatuko nauzu.
[35] Pedrok esan eutson:
—Zurekin hil behar badot ere, ez zaitut ezelan ere ukatuko.
Eta gauza bera inotsoen ikasle guztiek.

****

Jausi..., baina jagi eta aurrera jarraitu!
Jaustea ez da ohore barik gelditzea, desondra edo humiliazinoa: geure makaltasunaren ondorioa da. Baina autortzen jakin behar da makaltasuna. Pedrok uko egin gura deutso, eta laster somauko dau bere haragian Jesus ukatzearen eztena; eta negarrari emongo deutso.

Lehian eta nor-gehiagoka hezi gura gaitue; eta hezi gura doguz gure umeak; eta saritzen doguz gailentzen diranak, irabazleak..., eta baita besteen lepotik onurak ataraten dabezanak.

Jesusek, ostera, erruki hartzen deutse: Pedrori lez. Ba daukagu, ba zer ikasirik gizarte zuzenago eta senidekorrago bat eraiki nahian: lehiaketara barik, ondoan egotera ahalegindu gaitezan. Ez deiogun huts egin lagunari.

**Gure Aita...**




## LAUGARREN EGOTALDIA
«Jesus bere amagaz aurkitzen da»

* Gurtzen zaitugu, Kristo,
eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.

4) **Mt 26, 38-41**

[38] Eta esan eutsen (Jesusek): «Hilteko zorian nago
tristuraz. Gelditu hemen eta egon zaiteze erne nirekin
batera». [39] Eta aurreratxoago joanik, ahozpez jausi zan
eta otoitz egin eban, esanez: «Ene Aita, ahal bada,
urrundu eizu niregandik edari samin hau. Hala ere,
egin bedi zeuk nahi dozun lez, ez nik nahi dodan lez».
[40] Ikasleengana joan eta lotan aurkitu ebazan. Pe-
drori esan eutson: «Beraz, ordu bete ere ezin izan za-
ree nirekin erne egon? [41] Egon zaiteze erne eta egizue
otoitz, tentaldian ez jausteko: gogoz gartsu izan arren,
ahula da-ta gizakia».

****

Hortxe dago ama, baina makal, ezinean, egin nahi baina ezin eginean. Eta hortxe dago zeruko Aita ere, baina ez geuk uste edo nahi izango geuken lez.

Eta amak bere mugak eta makaltasuna onartzen jakin behar dauan lez, jakin behar geuk ere Jainkoaren *bestetasuna* onartzen, haren esanetara jarten, hari bere maitasuna eta emon deuskun bizitzea eskertzen...

Jesusek ondoan somauko dau ama, eta baita zeruko Aita ere. Eta amaren negarrak samina emongo badeutso ere, eta Aitaren isiltasunak zulo baltzera eroan leiken arren, bizitzan zehar hareen nahia egin izanak eroango dau atsekabean dagoana bera ere adoretzera, hari bizitz auspoa emotera.

Izan daiguzan gogoan gure artean dagozan holango hainbat eta hainbat gizaki apal, entzule, adore-emoile, laguntzaile...

**Gure Aita...**

## BOSTGARREN EGOTALDIA

«Jesusi laguntzera behartzen dabe Zirinearra»



**Mt 27, 33-35.39-40**

[33] Golgota izeneko tokira heldu ziranean (Golgotak
«Buru-hazur» esan nahi dau), [34] behazunez nahastuta-
ko ardaua emon eutsoen edatera. Jesusek dastatu,
baina ez eban edan nahi izan. [35] Kurutzean josi ondo-
ren, soldaduek Jesusen jantziak banatu egin ebezan
zotz eginez. [36] Eta han gelditu ziran, jesarrita, zaintzen.
[37] Buruaren gainaldean kondenearen arrazoia ipini eben
idatzita: «Hau Jesus da, judeguen erregea». [38] Lapur bi
josi ebezan kurutzean Jesusegaz batera, bata eskoian
eta bestea ezkerrean.
[39] Handik igaroten ziranek irain egiten eutsoen Je-
susi, buruari eragin [40] eta esanez: «Santutegia desegin
eta hiru egunean eraikitzen ei dauan horrek, Jainkoa-
ren Semea bahaiz, salba egik heure burua! Jatsi hadi
kurutzetik!»

****

Ondo bizi gara... zenbaten lepotik? Zenbat pobretu doguz geure ondo izatearen izenean? Zenbat eroan doguz (daroaguz!) gosearen, pobreziaren, ez-jakintzaren eta alkar gorrotatzearen kurutzera? Hau ere ez dogu autortu gura izango, baina horixe da egin doguna Hirugarren (deritzogun) Munduagaz: euren aberastasunak xurgatzen doguz eta zorpe baltzean hondatzen doguz: kanpo-zorraren kurutzean josita izten doguz.

Eta Kalbarioko gudariek lez, geure artean zotz egiten doguz lapurtutako aberastasunak norentzat izango diran, eta, kontsumokerian bizi izanez metatzen ditugun hondakinak, bihurtzen deutseguz pobretuei.

Zabaldu, Jauna, nire bihotza. Irakatsi eidazu neurritsu izaten, daukadana eskertzen eta partekatzen; eta izan daidala argi: soberan daukadana inorena dala, eta ezin daikedala alperrik galdu.

**Gure Aita...**

30 Listua botaten eutsoen eta, kainaberea kendurik,
buruan joten eben. 31 Nahiko iseka egin ondoren, kapa
erantzi eta bere soinekoak jarri eutsoezan. Gero, kuru-
tzean josteko eroan eben.

****

Zein errez joten dogun inoren lepotik barre egitera. Txiki-txikitatik ikasi dogu akatsen bat dauanari barre egitea; eta, gero atsekabez lagunduko badeutsogu ere, jausten dan nagusi bati ere barre egitea... Ez dogu atsegin, baina, geuri inork barre egin deigun...

Zenbat bilozten dogun geure akatsak inork ikusi ez daian, besteei barre egin deieen. Eta, behin baino sarriagotan (ikusten gagoz egunotan) barre egin deutsegunen beharra dogu: etxeetan gure nagusiak zaindu daiezan; geuk egin nahi ez doguzan lanak egin daiezan; irabazi txikiko zerbitzuak egin daiezan... Eta barre!

Ikasiko ete dogu lanik apalena ere aintzat hartzen eta eskertzen? Ikasiko ete dogu pertsonak apal eta xumeak, emakumea eta zaharra, ezindua, gitxitua, gaisoa edo ez-jakina aintzat hartzen, senidetzat eukiten, eta dana-dalako eskertzen..., danontzako gizartea egin gura badogu?

**Gure Aita...**




**HAMAIKAGARREN EGOTALDIA**

«Jesus kurutzean josten dabe»

* Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.






* Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.

**Mt 26, 47-50**

47 Jesus berbetan egoala, han
azaldu zan Judas, Hamabietako
bat; gizon-multzo handi bat etorren haregaz, ezpata
eta makilak eskuetan, abadeburu eta herriko zaharrek
bialdurik. 48 Saltzaileak seinale hau jarria eutsen: «Nik
musu emongo deutsodana, horixe da, atxilotu eizue».
49 Berehala, Jesusengana hurreratu eta esan eutson:
«Agur, Maisu!»
Eta musu emon eutson.
50 Jesusek esan eutson: «Adiskide, egizu egitekoa!»
Orduan, besteek, Jesusengana hurreraturik, heldu
eta atxilotu egin eben.

****

Edonon aurkitu geike ezin dauanari laguntzera jatorkonik, eta holango zereginean bizia bera ere emon leikeanik. Eta ez halabeharrez, gogo onez baino: barru-barrutik eta esker onez. Holango askok esker onik ere ez dabe jasoten sarritan.

Baina baita *bestelangorik* ere aurkitzen doguz: laguna bera ere, diru apur bategaitik —edo norbere burua arriskutik ataratearren— salduko leukeanik. Gehiago ez ete dira honeik? Jesusek berak ere aurkitu eban bereen artean. Inor ez dago, ba, horretatik aske.

Ez ete dogu ikasi behar Zirinearragandik?: behartu egiten

gaituela?, ba aprobetxatu behartze hori, inori laguntzeko bada; heriotzara daroenagaz bat egin; emondako berbeari eutsi... Eta, batez ere laguna, baina baita beste edonor ere, inoiz ez saldu; eta bai saltzailearen erruki izan.

**Gure Aita.**




## SEIGARREN EGOTALDIA

«Beronikak aurpegia garbitzen deutso»

* Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.

**Mt 26, 57.63-68**

57 Jesus atxilotu ebenek Kaifas abade nagusiaren etxera eroan eben, han batuak ziran-eta lege-maisu eta herriko zaharrak.
63 Baina Jesus isilik. Abade nagusiak esan eutson:

—Jainko biziagaitik eskatzen deutsut: Esaiguzu zinez, zu zaran Mesias, Jainkoaren Semea.

64 Jesusek erantzun:

—Zeuk esan dozu. Eta gehiago dinotsuet: Oraindixik Gizonaren Semea Ahalguztidunaren eskoian jesarrita eta zeruko hodei gainean etorten ikusiko dozue.

65 Orduan, abade nagusiak bere jantziak urratu ebazan eta esan:

—Biraoa esan dau. Ba ete dogu lekuko beharrik?
Zeuek entzun dozue biraoa. 66 Zer deritzozue?

Hareek erantzun:

—Heriotzea merezi dau.



****

Jaustea da gure geureena. Ez daigun ukatu. Onartu daigun apaltasunez. Ez gara gitxiago, jausi egin garalako. Bai, ostera hori ukatzen dogulako: besteak guzurtitzat jarten ditugu-ta, edo emon leiguen laguntza ez deuskue-ta emongo, eta gizarte lehiakorra indartu egiten dogu-ta.

Ez daidala inor errudundu nire makaltasunez edo jausteez. Jakin daidala autortzen nire ezina, eta onartu eta eskertzen laguntza. Ez daiela neure erruz inor heriotzaratu, edo izena galtzera eroan. Ez daidala agintea neure alde jarri nahi izan...

Izan naitela neure makaltasunen jabe, eta besteen makaltasunen erruki.

**Gure Aita.**




## HAMARGARREN EGOTALDIA

«Jesus bilutsik jarten dabe»

* Gurtzen zaitugu, Kristo, eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.

**Mt 27, 27-31**

27 Gobernariaren soldaduek Jesus jauregira eroan
eben eta gudu-taldeko danak batu ebezan haren inguruan.
28 Soinekoak erantzi eutsoezan eta purpurazko
kapa batez jantzi eben.
29 Arantzaz egindako koroia
ezarri eutsoen buruan eta kainabera eskuan, eta, aurrean belaunikaturik, iseka egin eutsoen esanez: «Agur, judeguen erregea!»

izatean jausi ez gaitezan, Jainkoaren seme-alaben askatasunean bizi izan baino.

**Gure Aita...**

## BEDERATZIGARREN EGOTALDIA




«Jesus hirugarrenez jausten da»

* Gurtzen zaitugu, Kristo,
eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.

**Mt 27, 21-26**

[21] Gobernariak barriro galdetu eutsen: «Bietako zein nahi dozue askatzea?» «Barrabas» —erantzun eben.
[22] Pilatok esan eutsen: «Eta zer egin behar dot Jesusegaz, Mesias delakoagaz?» Danek erantzun eben: «Kurutzean josi!»
[23] Eta harek: «Zer oker egin du, bada?» Haiek, gero eta oihu handiagoz: «Kurutzean josi!»
[24] Guztia alperrik zala eta, gainera, iskanbila sortzera joiala ikusirik, Pilatok ura hartu eta eskuak garbitu ebazan jendearen aurrean, esanez: «Ez naz gizon honen heriotzearen erantzule! Zeuek ikusi!»
[25] Herri osoak erantzun eban: «Geu eta geure ondorengoak egiten gara horren heriotzearen erantzule!»
[26] Orduan, Barrabas askatu eutsen eta Jesus, zigortuazo ondoren, hareen eskuetara emon eban, kuruean josi eien.



[67] Orduan, aurpegira listua bota eta ukabilkadak emon eutsoezan; beste batzuek masailakoak emoten eutsoezan, [68] esanez: «Igarri egik, Mesias, nork jo hau?»

****

Danek zikindu nahi dabe Jesusen aurpegia, izaerea eta egintza-bidea? Danek dauke Jainkoaren Legea —halan deitzen deutsoe, behintzat euren arterako daukezan arauei— gizaki baten bizitzaren gainetik (hau errudun izan arren)? Holangoek heriotzara daroe gizakia Jainkoaren izenean, bizitz emoilearen izenean heriotzara daroe... Burugabekeria!

Danek ez! Emakume bat, ordea, besteek legearen izenean, Jainkoaren izenean, zikinduko daben aurpegia, errukiaren izenean, maitasunaren izenean garbitzen ausartuko da.

Zenbat izen, aurpegi, eginkizun, zikintzen doguz... Zeren izenean? Jesusen aurpegia ikusiko bagendu euretan...

**Gure Aita...**

## ZAZPIGARREN EGOTALDIA




«Jesus bigarrenez jausten da»

* Gurtzen zaitugu, Kristo,
eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.

**Mt 26, 73-75**

[73] Gerotxoago, han egozenek, hurreraturik, Pedrori esan eutsoen:

—Bai, hi ere horreetakoa haiz, jakina; berbakeran
ezagun dok.
74 Orduan, Pedro biraoka eta maldizioka hasi zan:
—Ez dot ezagutzen gizon hori.
Une haretan oilarrak jo eban. 75 Gogoratu jakon
Pedrori Jesusek esana: «Oilarrak jo baino lehen, hiru
bider ukatuko nozu», eta, kanpora urtenik, negarrari
emon eutson samin handiz.

****

Bai. Behin baino gehiagotan jausi geintekez, ez jausteko berbea emon arren. Makalak gara. Baina makalagoak gara gure makaltasuna autortzen ez dakigunean, emon nahi deuskuen laguntza ukatzen dogunean, geurean zarratzen garanean…

Bizi dogun egoereak irakasten deusku makaltasunak ez ditugula ezkutatu behar, indartsuak bagina lez agertzeko; haizeratu egin behar ditugula baino besteen laguntzea eskuratzeko eta alkarregazko gizarte bat eraikitzeko.

Zein ederra dogun ikusten gagozan gizarte hau: egoereari aurre egiteko danok etxe barruan, eta alkarri zelan lagundu bilatzen; alkarren bizitza zelan alaitu bilatzen; bakotxak bere aberastasunak besteen zerbitzuan jarten eta alkartasunera deitzen…

Ez dot, Jesus, nire makaltasunak ezkutatu nahi, laguntza eskale bihurtu baino. Ez dot ukatu nahi jasoten laguntzera jatortan eskua, oratu eta eskertu baino. Ez dot neurean zarratuta bizi izan nahi, laguntzera urten baino.

**Gure Aita…**

## ZORTZIGARREN EGOTALDIA
«Jesusek berba egiten deutse andrei»






* Gurtzen zaitugu, Kristo,
eta bedeinkatzen.

— Mundua zeure kurutze santuaz salbatu dozulako.

**Mt 27, 3-5**
3 Judas saltzaileak, Jesus
kondenatua ebela ikustean, da-
mu izan eban eta zilarrezko hogeita hamar txanponak
abadeburu eta herriko zaharrei bihurtu eutsezan, 4
esanez:
—Txarto egin dot, errugabea heriotzara emonez.
Baina hareek erantzun eutsoen:
—Eta guri zer? Hor konpon!
5 Orduan, dirua tenpluan jaurtirik, alde egin eta
bere burua urkatu eban.

* * * *

Jesusek bere ahotsa luzatzen deutse euren samina agertzen deutsoen emakumeei. Ez dau nahi horretan gelditu daitezen; bere egoeran, eurei gainera jatorkena irakurri daiela baino.

Agintarien edo ahaltsuen edo dirutsuen morroi ez izateak dakarren *hondamena* ez da hain errukigarria. Jainkoaren nahia betetean aurkitu daiteken *hondamena* ez da hondamen, bizitzea Jainkoari eskertzea baino.

Baina diruagaitik lagun bat saltzea… Jainkoaren izenean, bizitzearen iturriaren izenean, gizon bat heriotzara emotea… horixe bai dala errukarria.

Bete gaitezala Jainkoaren esker onez, zalekerien morroi